

aek
18.korrika

EMAN
EUSKARA
ELKARRI

# UNITATE DIDAKTIKOA
# 12-18 URTE

# SARRERA OROKORRA

## HELBURUA:
Euskararen erabilera sustatzea eta indartzea. Helburu berarekin lanean diharduen AEK-k antolatutako KORRIKA ekimenaren zergatiaz eta beharraz ohartzea.

## IRAUPENA:
KORRIKA 18 martxoaren 14an hasiko da Andoaingo Martin Ugalde Kultur Parkean eta martxoaren 25ean amaituko da Baionan.
KORRIKA kanpainak bi asteko iraupena izango du (11 egun eta aurre-prestaketa). Betiere, irakasleen esku geratuko da kanpaina bete-betean jarraitzea edo egun gutxiagotan burutzea.

## PROZEDURA:
Bi asteko proposamena da hau, baina ez da ahaztu behar malgutasun osoa dagoela unitatea erabiltzeko garaian, jarduerak solteak baitira. Horrela, beraz, norberaren gustura antola daiteke lanketa.
Jarduera bakoitza garatzeko zenbat egun edo saio erabili behar diren jakiteko gomendioa ere bertan duzue.
Proposatzen diren jarduerak ez dira soilik Euskara-arloan egiteko. Euskararen normalizazioa edozein jakintza-arlotako irakasleen ardura ere badenez, ikastetxeko irakasle eta gainerako hezitzaileen esku-hartzea oso garrantzizkoa izango da helburuak lortzeko garaian.

## EGITURA:
Unitatea adinaren arabera antolatuta dago.
Adin-tarte bakoitzari egokia zaion lanketa proposatzen da.
- Haur Hezkuntza (Hegoaldean) eta Ama Eskolan (Iparraldean) lantzekoa.
- 6-8 urtekoekin lantzekoa. (LHko 1.zikloa)
- 8-10 urtekoekin lantzekoa. (LHko 2.zikloa).
- 10-12 urtekoekin lantzekoa. (LHko 3.zikloa).
- 12-18 urtekoekin lantzekoa. (DBH eta DBHO)

## KIDETZE-PLANA:
Plangintza honek ikasle helduak eta gazteagoak kidetzeko proposamena egiten digu. Ikasle helduenak gaztetxoengana joango dira ipuina lantzera.
Ipuina kontatzeko garaian, hain zuzen, ikasle helduagoak ipuin-kontalari eta antzezle bihurtuko ditugu.

**Kidetzearen helburuak** honako hauek dira:
- Elkarrekintzaren bitartez ikasle txiki eta nagusien euskara-erabileran eragitea.
- Ikastetxearen hizkuntz normalizazioan ikasle nagusiak subjektu aktiboak izatea eta ez hartzaile pasibo huts; horretarako ikasle helduenen protagonismoa bultzatzen da.
- Ikasle nagusiek ardurak eta konpromisoak har ditzaten bultzatzea.
- Ekintza honen bidez motibazioa indartzea, batez ere, ikasle nagusiekin.
- Ahozkotasunaren lanketan jardutea. Kontuan hartu unitatea adinen arabera banatu dugula, baina asmoa ez dela, inondik inora, bakoitza bere jardunean ibiltzea besteenaz ohartu barik. Zilegi da ekintza elkarrekin egitea; kidetzea da horren adibide bat. Amaiera-ekitaldian zein sarrera-irteeretan antola daitezkeen ekintza osagarri guztiak, beraz, ikastetxe osoari zuzendutakoak izan daitezen ahalegintzea komeni da.


**EGILEA**
Eider Andrés Tejedor

**KOORDINAZIOA**
Kristina Boan
(Euskal Herriko Ikastolak)

**ESKER BEREZIAK**
Itxaropena Ikastola,
Belen Baztarrika, Iker Torres,
Arrate Andrés, Esteban Agirre eta
Martin Etxeberriari.

**DISEINUA**
di-da zure balioen marka

# IRAKASLEARENTZAT ORIENTABIDEAK

## ZER DA IRAKASLEAK UNITATE DIDAKTIKOAN AURKI DEZAKEENA?

### SARRERA-GIDA

Atal honetan lanerako proposatutako material guztiaren aurkezpena egiten zaio irakasleari: lanaren helburu orokorrak, jarduerak, iraupena, lanerako prozedurak eta antolaketa-egitura.

### ETAPAREN BEREZITASUNEN ARABERAKO ZIKLOKAKO PROPOSAMENA

Etapako berezitasunak kontuan hartuta, ziklokako planteamendua proposatzen zaio irakasleari; horretarako, adin-tarteari dagozkion jarduera esanguratsuenak hautatu dira. Irakasleek egunerokoan lantzen dutenaren osagarri izan nahi du unitate didaktikoak.

Ziklo bakoitzean egitura berbera jarraitzen da: lehenik, lan-eskema aurkezten da, inplikatzen duen jarduerarekin lotura eginez (taula-formatuan). Eskemak ziklo horretarako proposatutako lanaren berri ematen du: jarduerak eta horien helburu zehatzak, jardueren deskribapena eta denboralizazioa. Bigarrenik, proposatutako jarduerak agertzen dira. Jarduera horietan ez da soilik tutorea edota hizkuntz irakaslea inplikatzea bilatzen, beste diziplina-arloak lantzen dituztenak ere parte-hartzaile bihurtu nahi dira: musika-irakaslea, plastika arloko irakaslea...

**HAUR HEZKUNTZARI** dagokionez, ipuina bilakatzen dugu ardatz. Jarduna emankorra suerta dakigun, ipuina lantzeko baliatzen dugun metodologia izango da gakoa. Ez dauka zentzurik umeak entzule huts izatea; ipuinaren dramatizazioaren bitartez, ipuinaren protagonista bihurtu behar ditugu, ipuina eta horrek helarazi nahi duen mezua bere egin ditzatela; horretarako, gure lana ulermen eta elkarrizketara bideratuko dugu. Ipuinaren istorioak eta ipuinaren pertsonaia nagusia den Labezomorroff pertsonaiak euskara ingurukoei eman dakiekeela erakusten dute.

Hala ere, ez da hausnarketarik lortuko ikasleek ipuina entzun-ikusi hutsaz; ezinbestekoa da gaia galdera itxien bidez bideratzea, irakaslea moderatzaile bihurtzea.

**LEHEN HEZKUNTZARI** dagokionez, hiru zikloetako bakoitzerako unitate didaktiko bana proposatzen da. Jarduera gehienak nahiko antzekoak diren arren, badira aldatzen direnak.

- Lehen zikloan (6-8 urte) esaterako, oraindik ipuinetik eratorritako jarduerak izango dira nagusi. Jarduera horien bitartez, umeek ahozko adierazpena landu dezatela bilatu nahi da, deskribapenak eginez, elkarrizketatxoak bideratuz... Ipuinaren kontaketan laguntzeko, koloreztatutako ilustrazioak erabiliko dira.

- Bigarren zikloan (8-10 urte) ipuinarekin lanean jarraituko dute ikasleek, ipuinaren ilustrazioak margotzen eta ipuinaren pertsonaia nagusia den Labezomorroff bera sortzen. Sintesirako eta deskribapenerako gaitasuna lantzeko aukera izango da.

- Hirugarren zikloan (10-12 urte) ipuinaren kontaketarako, kidetzeari loturiko plangintza-estrategia sustatu nahi genuke. Ikasle helduak (12-18) ipuin-kontalari bihurtuko dira, haur gazteagoei Labezomorroffen bizipenak kontatzeko. Era berean, ikaslearen adina

# IRAKASLEARENTZAT ORIENTABIDEAK

## ZER DA IRAKASLEAK UNITATE DIDAKTIKOAN AURKI DEZAKEENA?

kontuan hartuta, ikaslearen atxikimendua sustatu nahi da euskararen erabilerarekiko konpromisoa bilatuz. Adin honetan euskararen dekalogoa egiteko eskatuko zaie ikasleei, beren konpromisoak idatziz adieraz ditzatela.

Ziklo horietan guztietan bada errepikatzen den ariketa bat: KORRIKA 18ren ibilbidea.

Horretan, ibilbidea jarraitzeaz bat, mapa mutua aurkezten da. Aurten, eta eguneko prentsa baliabide ezinhobea dela pentsatzen dugun arren, teknologia berriez baliatzea proposatzen dugu. Horretarako, AEK koordinakundeak ***www.korrika.org*** helbidean erakusgai izango duen GPSa baliatuz, KORRIKA Euskal Herriko bazterretan barrena nondik nora dabilen ikustea proposatzen dugu.

Ipuinari dagokionez, adin-tarte honetan ere, ez da hausnarketarik lortuko ikasleek ipuina entzun-ikusi hutsa egiten badute. Ezinbestekoa da gaia galdera itxien bidez bideratzea. Irakasleak, horretarako, ipuinean agertzen diren egoera eta pertsonaien inguruko hausnarketa bideratuko du. Materiala ezagutuko du irakasleak eta jakingo du zein puntu diren garrantzitsuenak.

**BIGARREN HEZKUNTZARI DAGOKIONEZ**, aurreko zikloan bezalaxe, oraingoan ere ikasle helduenak ipuin-kontalari lanetan arituko zaizkigu. Horretarako, kidetze-estrategia erabiliko dugu. Ikus horren deskribapena sarrera orokorra deituriko atalean. ***"Eman euskara elkarri"*** mezua hausnarketarako gai izango da Bigarren Hezkuntzan, ikasleak euskararen garrantziaz jabetu daitezen, euskarak egunerokoan zer suposatzen duen pentsa dezaten... Unitate honetan, gainera, teknologia berrietara zein ikus-entzunezkoetara hurbilduko ditugu nerabeak, haiek ere euskaraz landu daitezkeela ohar daitezen.

Hauek dira etapa guztietan errepikatzen diren jarduerak:

- Kanta eta mezua. KORRIKA kanpaina kokatzeko eta girotzeko erabiliko dira.
- Ipuina. Ipuina lantzerakoan, hezkuntza-etapa bakoitzak bere berezitasuna izango du.
- Era berean, KORRIKA TXIKIA ekimena indartu egin nahi da, aukera ematen digulako eskola barruan egindako lana kanporatzeko eta euskararen aldeko elkartasuna adierazteko.

  Jarduerak antolatzerakoan progresio bat bilatu nahi izan dugu, ikasleek KORRIKArekin eta horrek helarazi nahi duen mezuarekin bat egin dezaten eta KORRIKAk Euskal Herriko bazterrak zeharkatzen dituen egunetan ikasleak ere KORRIKAren parte senti daitezen.

# IRAKASLEARENTZAKO ORIENTABIDEAK

| JARDUERAK-DBHO | HELBURUAK | EKINTZAREN GARAPENA | DENBORALIZAZIOA | ARDURADUNA |
|---|---|---|---|---|
| **1.PRENTSAURREKOA** | - KORRIKA 18 hasi dela jakinaraztea.<br>- ***www.korrika.org*** webgunea arakatu dezatela ikasleek.<br>- Ikasleek KORRIKA 18ren inguruan informazioa bilatzea.<br>- Herrian egingo diren ekintzen berri jaso eta horiek zabaltzea.<br>- Kazetaritza-hizkuntza lantzea.<br>- Ahozkotasuna lantzea. | - IkasleekKORRIKA18ri buruzko informazioa bilatuko dute: noiz, non hasi, noiz bukatu, kantaren egileak ...<br>- Bi talde egingo dira, prentsaurrekoan hizlari izango direnak eta kazetari-lana egingo dutenak.<br>- Informatzaileek datuak bilatuko dituzte prentsaurrekoan sortuko diren galderei erantzuteko. Kazetariek KORRIKAren inguruko galdetegia prestatu eta galderak egingo dizkiete mahaiaren beste aldean egongo diren ikasleei.<br>- Jarduera borobiltzeko, kazetari-lana egin duten ikasleek KORRIKAren inguruko albiste edo erreportajea idatziko dute eta informatzaile-lanetan aritu direnek prentsari banatzeko moduko prentsa-oharra. | - Hiru saio:<br>- KORRIKA 18 hasi aurretik,prestaketa saio bat.<br>- KORRIKA hasten den egunean, prentsaurrekoa.<br>- Prentsaurreko ostean, oharrak idazteko hirugarren saio bat. | - Gelako tutorea edo hizkuntza-arloko arduraduna. |

# IRAKASLEARENTZAKO ORIENTABIDEAK

| JARDUERAK-DBHO | HELBURUAK | EKINTZAREN GARAPENA | DENBORALIZAZIOA | ARDURADUNA |
|---|---|---|---|---|
| **2. KANTA** | KORRIKA 18ren girotze-lana eta aurkezpena. | - Kanta entzun eta irakurri.<br>- Bideoklipa ikusi.<br>- Sarrera/irteera orduetan, jolasorduan ... KORRIKA 18ren abestia jarri. | - Mezua entzun eta bideoklipa ikusi, saio 1.<br>- KORRIKAk irauten duen bitartean. | - Gelako tutorea edo hizkuntza-arloko arduraduna. |
| **3. IPUINA** | - Kontakizuna entzutea: aditu eta ulertzeko gaitasuna lantzea.<br>- Hiztegia lantzea.<br>- Idazmena lantzea.<br>- Irudimena lantzea: adierazpen plastikorako estrategiak erabiltzea.<br>- Ahozkotasuna lantzea.<br>- Gorputz-adierazpena lantzea.<br>- Kidetze-estrategia. | - Ipuina desordenatuta irakurriko dute binaka eta ordena egokia emango diote.<br>- Jatorrizko ipuina irakurri eta landuko dute denen artean.<br>- Ipuinaren amaiera aldatuko dute ikasleek. Talde txikietan antolatu eta ipuinari beste amaiera bat emango diote.<br>- Kidetze-estrategiaren bidez, ikasle nagusiek ikasle gaztetxoenen geletara joan eta ipuinaren irakurketa dramatizatua burutuko dute. | Jarduera hau burutzeko 4 saio erabiltzea aurreikusten da:<br><br>- Ipuina ordenatu eta lantzeko, saio bat erabiliko dute.<br>- Ipuinari amaiera emateko pasarte berriak asmatzeko, saio bat erabiliko dute.<br>- Ikasle gaztetxoei kontatu aurretik prestaketa-lana egiteko, saio bat erabiliko dute.<br>- Ikasle gazteen ikasgeletara joan eta ipuinaren kontakizuna egiteko, saio bat erabiliko dute. | - Gelako tutorea edo hizkuntza-arloko arduraduna. |

# IRAKASLEARENTZAKO ORIENTABIDEAK

| JARDUERAK-DBHO | HELBURUAK | EKINTZAREN GARAPENA | DENBORALIZAZIOA | ARDURADUNA |
|---|---|---|---|---|
| **4. IBILBIDEA** | - KORRIKA 18ren ibilbidea lantzea.<br>- Euskal Herria ezagutzea.<br>- Euskal Herriko hainbat herri ezagutzeko eta deskribatzeko gaitasuna garatzea. | - Euskal Herriko mapa gela barruan edo pasabideetan jarri eta, bertan, KORRIKA 18ren ibilbidea markatu: etapa bakoitzaren hasiera eta bukaera.<br>- KORRIKAk egunez egun egiten duen ibilbidea ***www.korrika.org*** webgunean begiratu.<br>- Ibilbidea markatzeko furgonetaren irudia erabili.<br>- Ibilbidean zehar interesgarria gerta dakigukeen hainbat herriren informazioa jaso eta horma-irudia egin. | - KORRIKAk irauten duen egunetan. | - Gelako tutorea. |
| **5. "EMAN EUSKARA ELKARRI" GALDETEGIA** | - KORRIKA eta euskal kultura ezagutzea eta lantzea.<br>- Talde-lana eta parte-hartzea suspertzea. | Zenbait proposamen:<br><br>a)Ikasgela (maila berekoak edo ziklo berekoak) arteko lehiaketa izan daiteke. Moderatzaileak KORRIKA eta euskal kulturarekin lotura duten galdera eta probak egingo dizkie (Atxikita).<br><br>b)Gelan talde txikiak sortu eta KORRIKA eta euskal kulturarekin lotura duten galdera eta probak egingo dizkiemoderatzaileak/ irakasleak. | - Saio bat. | - Gelako tutorea edo hizkuntza-arloko arduraduna |

# IRAKASLEARENTZAKO ORIENTABIDEAK

| JARDUERAK-DBHO | HELBURUAK | EKINTZAREN GARAPENA | DENBORALIZAZIOA | ARDURADUNA |
|---|---|---|---|---|
| **6. MEZUAREN HAUSNARKETA** | - Ahozko adierazpena lantzea.<br>- Ikasle bakoitzak euskara norengandik jaso duen eta nori eman diezaiokeen hausnartzea.<br>- Ikasle bakoitzak ezagutzea euskararekiko erlazioa nondik datorkion eta hausnartzea nori ematen dion edo eman diezaiokeen. bakoitzakezagutzeaeuskararekiko erlazioa nondik datorkion eta hausnartzeanori ematen dion edo eman diezaiokeen. | - Mezua ahots gora irakurri.<br>- ***"Eman euskara elkarri"*** ideiatik abiatuta, ikasle bakoitzak 4-5 ideia idatziko ditu bere koadernoan.<br>- Ikasleen arteko solasaldi edo eztabaida egingo da, irakasleak solasaldia bideratzeko ideia, galdera eta oinarriak emango dizkie ikasleei. | - Saio bat. | - Hizkuntza-arloko arduraduna. |
| **7. DEKALOGOA** | - Euskararekiko eta KORRIKA 18rekiko konpromiso zehatzak adostea.<br>- Talde-lana lantzea.<br>- Idazmena lantzea.<br>- Adin ezberdinetako ikasleen arteko harremana eta elkarlana bultzatzea. | - Ikasle bakoitzak bere konpromisoak idatziko ditu (horretarako kontuan izan beharko du esaldi zuzen eta laburrak erabili behar dituela eta era positiboan idatziko dituela, gehienez 10).<br>- Talde txikietan elkartu eta konpromiso horiek bateratuko dituzte.<br>- Talde bakoitzeko bozeramaileak ahots ozenezirakurri eta guztion artean gelako dekalogoa sortuko dute.<br>- Ikasle guztien sinadurak jasoko dira dekalogoan. | - Dekalogoa sortzeko saio bat. Tutoretza-ordua erabil daiteke.<br>- Beste proposamenak egiteko, ordezkariek 30 minutuko saio bat beharko dute. | - Gelako tutorea. |



EUSKARAZ BIZI
ikastolenelkartea
18.aek korrika
EMAN EUSKARA ELKARRI

# IRAKASLEARENTZAKO ORIENTABIDEAK

| JARDUERAK-DBHO | HELBURUAK | EKINTZAREN GARAPENA | DENBORALIZAZIOA | ARDURADUNA |
|---|---|---|---|---|
| **8. "EMAN EUSKARA ELKARRI" LIPDUB-A.** | - KORRIKA 18ko kanta erabiliz,lipdub bat sortzea.<br>- Gorputz-adierazpena lantzea. | - Abestia landu eta bideoklipa ikusi.<br>- Gela osoak gidoia sortuko du, Esne Beltzaren kantutik abiatuta lipdub bat sortzeko.<br>- Musikak eta letrak adierazten dienaren gorputz-adierazpena egingo dute ikasleek.<br>- Lipdub-a grabatuko dute irakasleen laguntza baliatuz. | - Hiru saio. | - Gelako arduraduna, gorputz-hezkuntzako irakaslea, informatika-arloko irakaslea. |
| **9. LEKUKOA** | - Adierazpen plastikorako oinarrizko teknikak ezagutzea.<br>- Ikasleak lekukoaren sinbologiaz ohartaraztea.<br>- Informazio-bilaketa lantzea.<br>- Dekalogoan hartutako konpromisoak aintzat hartzea. | - Maila bakoitzak lekuko bat izango du.<br>- Irakasleak lekukoaren sinbologia eta garrantzia ezagutzera bideratuta dauden galderak egingo dizkie denon artean eta Interneteko informazioa lagun.<br>- Euskararen dekalogoan adostutako konpromisoak lekukoaren barruan sartu. | - Adierazpen plastikorako saioak erabillitezke, lekukoa egiteko.<br><br>- Sinbologia eta garrantzia lantzeko saio bat. | - Adierazpen plastikoko irakaslea.<br>- Gelako tutorea edo hizkuntza-arduraduna. |

# IRAKASLEARENTZAKO ORIENTABIDEAK

| JARDUERAK- | HELBURUAK | EKINTZAREN GARAPENA | DENBORALIZAZIOA | ARDURADUNA |
|---|---|---|---|---|
| **10. PETOA** | - Plastika-adierazpenen oinarrizko teknikak eta baliabideak erabiltzea. | - KORRIKA TXIKIrako edo eskolan egingo den jaialdirako petoa prestatu.<br>- Petoaren aurreko aldean KORRIKA 18ren logoa jarriko dugu eta atzean hutsik; bakoitzak bere konpromiso bat idatz dezake, dekalogoan hartutakoen artean garrantzitsuena dela uste duena.<br>- Erabiliko ditugun materialak ahalik eta berrerabilgarri edo birziklagarrienak izango dira. | - Plastikako irakaslea edota gelako tutorea. | - Plastikako irakaslea edota gelako tutorea. |
| **11. KORRIKA TXIKIA** | KORRIKA 18ren girotze-lana. | - 10. jardueran sortutako petoa jantzita aterako dira, eta gela bakoitzak sortu duen lekukoa txandaka eramango dute. | - KORRIKA herritik pasatzen den egunean.<br>- Ikastetxeko ordutegian. | - Gelako tutorea. |

# PRENTSAURREKOA

## SARRERA

Oraingo jarduera honetan gure ikasleak kazetari-lanetan ipiniko ditugu. Lehenik eta behin KORRIKA 18ri buruzko informazioa bilatu beharko dute, KORRIKA non hasi eta amaitzen den, omenduak, herrian antolatuko diren ekintzak (Korrika Kulturala, Korrika Txikia)...

Informazioa antolatu eta AEK-k KORRIKA 18 hasten den egunean burutzen duen prentsaurrekoa irudikatuko dute.

Ikasle guztiek egitekoa izan dezaten, irakasleak rolak banatuko ditu, eta bakoitzari egin beharreko lana azaldu.

## PROZEDURAK

Irakasleak prentsaurreko bat egitea proposatuko die ikasleei.

Bi talde egingo dira, prentsaurrekoan hizlari izango direnak (5 ikasle inguru) eta kazetari-lana egingo dutenak, hots,beste guztiak (talde txikietan banatuta).

Ikasle guztiek, bai informazio-emaile lanetan egongo direnek, bai informazioa jasotzeko lana egin behar dutenek ere, aurre prestaketa egin beharko dute, eta KORRIKAren webgunean, hedabideetan... informazioa bilatuko dute.

Informazio-emaileek datuak antolatuko dituzte eta kazetariek egiten dizkieten galderei erantzungo diete. Interesgarria izango da kazetariek erabili ohi dituzten teknikei arreta jarri eta esku artean izatea albisteetan ohikoak diren datuak. Mahairen atzealdean daudenek prest egon beharko dute galderei erantzuteko, eta jakin beharko dute ordena mantentzen: bakoitzak zein galderari erantzungo dien jakin ...

Kazetariek KORRIKAren inguruko galdetegia prestatu eta galderak egingo dizkiete mahaiaren beste aldean egongo diren ikasleei.

Prentsaurrekoa bera bezain garrantzitsua izango da haren osteko lana.

Ikasle guztiek artikulu edo erreportaje bana idatzi beharko dute. Kazetari-lanetan aritu diren ikasleek ikastolako aldizkarian edo herriko egunkarian kaleratzeko moduko artikulu edo erreportajea idatziko dute. Informazioa ematen egongo diren ikasleek, ordea, prentsari emateko moduko testua, alegia, prentsa-oharra idatziko dute.

Irakasleak erabakiko du beste mota bateko idazkiak lantzea interesgarri izan daitekeen. Baliteke KORRIKA KULTURALAren ekintza baten inguruko kronika idaztea ikasle batzuek, edota iritzi-artikulua beste batzuek... irakasleak taldearen ezaugarriei erreparatuko die, lana antolatzerako orduan.

Jarduerari nolabaiteko garrantzia emateko asmoz, pentsa lezake irakasleak ikastolako aldizkarian edo ikasgelako blogean ikasleen artikuluak publikatzea, edota prentsaurrekoa grabatu eta Interneten ikusgai jartzea.

# PRENTSAURREKOA

Besteak beste, honakoak bilatu beharko dituzte informazio-emaileek:

- ZER DA KORRIKA
- KORRIKA 18 MEZUA
- KANTA / BIDEOKLIPA
- NON HASI / NON BUKATU
- OMENDUAK
- KORRIKA 18 GURE ESKOLAN
- KORRIKA 18 GURE HERRIAN

## BALIABIDEAK

- Internet. KORRIKA 18 web orria: ***www.korrika.org***
- Kanta eta bideoklipa.
- Prentsa.
- Megafonia.



# KANTA

## SARRERA

Jarduera honen helburua hutsuneak betetzea da eta KORRIKA 18ko abestia entzun eta ikasteko baliabideak eskaintzea.

Era berean, abestia egin duen taldearen (ESNE BELTZA) informazioa eman diezaiekegu ikasleei.

## PROZEDURA

Lehenik, abestia banatu eta letraren irakurketa burutuko dugu.Ondoren, hutsuneak identifikatu eta horiek betetzeko aukerak irakurriko ditugu. Jarraian, abestia entzun eta hutsuneak osatu. Azkenik, emaitzak ahots ozenez irakurri eta kantaren entzunaldia burutuko dute. Ea

Zorterik baden eta guztiek asmatzen duten. Noski, denon artean abestu!

## BALIABIDEAK

- Hurrengo orrialdearen fotokopiak, ikasle guztientzat.
- Entzunaldia egin ahal izateko KD irakurgailua eta audioa.

# KANTA " BAGOAZ"

Bagoaz Euskal Herritik mundura

eskua emanaz ........................

bideak direla gure lotura

urratsak direla gure ..................

bagoaz Korrika uo...

elkar entzunaz elkar ..................

bagoaz Korrika uo...

guk jaso duguna zuei .................

Euskara da euskaldunon ...............

guztion lur eta guztion zeru

horregatik maite dugu .................

Baina gehiagok maita dezakegu

bagoaz korrika uo...

ikastera eta erakustera

bagoaz korrika

BAGOAZ KORRIKA

...........................................................

BAGOAZ KORRIKA

...........................................................

BAGOAZ KORRIKA

...........................................................

BAGOAZ KORRIKA

...........................................................

HARTU ETA EMAN EUSKARA ELKARRI

Maule, .............., Garazi,.................

............., Bilbo, Gasteiz, ................

herri guztietan euskara, bai ona!

hizkuntza baita gure .....................

bagoaz korrika uo...

eta elkarri euskara ematera

bagoaz korrika!

# IPUINA

## SARRERA

Jarduera hau urtero errepikatzen den horietakoa bada ere, aurten, lehenik eta behin kohesioa lantzeko jarduera bat proposatzen dugu. Ipuinaren pasarteak ordena ez egokian izatetik ipuinaren jatorrizko bertsioaren irakurketara pasako dira ikasleak.

Jarduera honetan ahozko zein idatzizko adierazpena landuko da, baita ikasleek kontatzeko duten gaitasuna ere; horrela, ipuinaren dramatizazioa era egokian egiteko gai diren erakutsiko dute.

Kidetze-estrategiaren bidez, ikasle gazteagoei kontatuko diete, gorputz-adierazpena eta ahozkotasuna lantzen duiten bitartean.

## PROZEDURA

Lehenik eta behin ipuina desordenatuta irakurriko dute denon artean; jarraian, bikoteka ipuinari ordena egokia eman eta denon artean zuzenduko dute ipuina eta, amaitzeko,dagokion intonazioarekin irakurriko dute.

Talde txikietan elkartu eta ipuinaren jatorrizko bertsioaren moldaketa egitea proposatuko zaie ikasleei. Ipuinaren hasiera eta gertakari nagusietatik abiatuta, ipuinari amaiera berria eman diezaietela proposatuko die irakasleak. Amaiera egokitzat jotzen bada, litekeena da Labezomorroffen istorioa luzatzea; alegia, KORRIKAko furgonetan dagoenean, KORRIKAri musika jartzeaz arduratu ostean, zer gertatuko da? Zer egingo du Labezomorroffek? Zein izango da labezomorroak AEKrekin izango duen harremana? Akaso euskararen zabaltzaile bihurtuko da?

Ikasgela bakoitzean asmatutako istorioen artean interesgarri, original edo politena aukeratu eta ikasle gaztetxoenen geletara (LH 3.zikloa*) joango dira, ipuina kontatzera. Ahozkotasuna, intonazioa eta dramatizazioa landuko dira, ipuina era egokian kontatzeko.

** 3. zikloa proposatzen dugu, maila hauetan ikasleak gai direlako jada ulertzeko kontatzen zaien hori ez dela jatorrizko ipuina baizik eta moldaketa bat, txikiagoen kasuan agian nahas ditzakete jatorrizko bertsioa eta entzuten ari direna.*

## BALIABIDEAK

- Ipuina desordenatuta.
- Jatorrizko ipuina.
- Ipuinaren irudiak.

# IPUINA

## A

Horretarako gogoa zuen, bada, Labezomorroffek berak, une hartan. Hura zen hura atarramentua! Etxerik eta lagunik gabe, parke-bazterrean! Poliki-poliki, tekla artean irristaka, blues triste bat jotzen eta kantatzen hasi zen Labezomorroff: “Labezomorro, labezomorro, ezin dela ibili; faltan duela, ez duelako, mintzatzeko lagunik!”.

Horretan ari zen, jo eta jo, ahots lodiz hitzei zukua ateratzen, hots metaliko batzuk entzun zituenean atzealdetik. Gizon bat zen, azalez apur bat beltzarana, lata erraldoi bat makilaz astintzen ari zena. Labezomorroffek ez zuen izutzeko ere astirik izan.

Segi, segi —zuzendu zitzaion gizona ordea—. Erritmoa jarraitzen ari nintzen. Ederki ari zara. Pena bakarra, ezin dudala zurekin abestu, ez dakit-eta euskaraz oso ondo.

## B

Labezomorroff pianoaren azpian bizi zen. Berak zekiela, horrela izan zen beti. Han, piano zaharraren ilunpean, etxeko sosegu astun hartan pasa zituen bere bizitza osoko ordu luze guztiak, oroimenak herren egiten ez bazion behintzat

## C

Hori guztia, zer esanik ez, kolpe gogorra izan zen Labezomorroffentzat. Amonarekin beti harreman iskanbilatsua izan zuen arren (batez ere erratza hartzea bururatzen zitzaionean), hari esker ikasi zuen euskaraz hitz egiten eta baita munduan gehien gustatzen zitzaiona ere: musika jotzea.

Izan ere, berak bakarrik zekien zenbat eta zenbat ordu pasa zituen piano azpian “Inaxio gure patroi haundia”, “Andre txarraren bentajak”, “Aita-semeak tabernan daude” eta antzeko abestiak entzuten. Entzuten eta buruz ikasten. Ze amonak ahots txarra zuen, baina oso altu kantatzen zuen behintzat.

Txikitatik amonak sartu zion grina hori medio, Labezomorroffek gau osoak pasa izan zituen tekla zuri-beltzen artean korrika, bere musika-dohainak garatzen eta trebatzen. Ordurako, harrokeriarik gabe esan zezakeen, soinean berezkoa zuen fraka jantzita, piano aurrean jartzen zenean, negarrez jartzeko gai zela edozein.

## D

Gaur egun, Labezomorroff jiran dabil. AEK-ko lagunek kontratatu dute, Korrika jaiaren kontura, korrikalarien jarraipena egiten duen furgoneta barruan musika jotzen aritzeko. Taldea eta guzti du gainera: “Babel-mozorro eta euskalariak”!

## E

Horrexegatik, beharbada, gezurrik esaten ez zekielako alegia, oso denbora tarte laburrean amonak Afrikako lurralde epelagoetara alde egin zuen (Ceutara, zerura edo antzeko herri batetara) eta banketxeek, bitartean, beren gain hartu behar izan zuten haren etxea zaintzeko zeregin arduratsua.

Handik gutxira, hau da, ia berehala, banketxeek etxea ere garbitu eta pianoak eta, horren barruko hari eta tekla artean ezkutatuta, Labezomorroffek, hiriko parkearen bazter eroso batean amaitu zuten, zakarrontzi-ilara luzearen aldamenean.

## G

Nonbait, hala ere, bere buruak kale egiten zion noski. Izan ere, bera ez zen berez Euskal Herrian sortua. Oso-oso txikitan, xomorro-arrautza besterik ez zela, kanpotik etorria izango zen Labezomorroff, inondik inora ere. Hori seguru. Horrela aipatzen zion, behintzat, etxeko amonak, piano azpitik egongelako alfonbraraino gaileta-papur bila pauso bat ematera ausartzen zen bakoitzean:

- Kaben la Rusia! Labezomorro alaena!

Ez zen zalantza handirik beraz. Labezomorroff, errusiarra zen. Urrutikoa. Aliena izateraino ez beharbada, baina kanpokoa bai. Bai, horixe! Amonak ez zuen ia piperrik ikusten, baina gezurrik ere  ez zuen sekula esaten.

## F

Labezomorroffek harrituta begiratu zion. Handia zen hura, gero! Berak musika behar zuen, mintzakide; beste hark, berriz, erritmoaren esanahia, hitza. Elkarri eman ziezaioketen behar zutena. Erraza zen hura.

- Hurbildu ba, motel. Neuk irakatsiko diat.

Jotzen jarraitu zuten. Eta kantatzen. Bi ahotsetara. Poliki eta dardarka, hasieran; segurtasun handiagoz gero. Harik eta, bi tresna izatetik, hiru eta lau izatera pasa ziren arte.

Emakume bat batu zitzaien gitarra txiki bat eta guzti (mandarina edo mandolina, edo horrelako fruta-izena zuen). Ile urdindua baina atzamarretan amona zenak baino artritis gutxiago zuena. Bilobei gustatuko omen zitzaien abesti hura eta berari ere irakasteko, mesedez.

Gorbata eta txaketa janzten zituen gizon gazte bat ere hurreratu zitzaien. Ez al zen banketxeko morroi hura, gainera? Labezomorroffek ez zekien seguru, denek horrenbesteko antza ote zuten... Bada hura, tronpa deitzen zion musika-tresna bitxi bat zuela etorri zen. Ba omen zekien euskaraz zer edo zer, baina herdoildu samarra omen zeukan.

Haiekin aritu zen Labezomorroff kantari eta pianoa jotzen ia gau osoan. Elkarrekin, alegia. Eta berdin hurrengo egunetan ere. Egunetik egunera, gero eta jende-multzo handiagoa biltzen zen, gainera. Hura bai ederra, parkeko giroa!

| 1. | 2. | 3. | 4. | 5. | 6. |
|---|---|---|---|---|---|
| | | | | | |

# IPUINA

Labezomorroff pianoaren azpian bizi zen. Berak zekiela, horrela izan zen beti. Han, piano zaharraren ilunpean, etxeko sosegu astun hartan pasa zituen bere bizitza osoko ordu luze guztiak, oroimenak herren egiten ez bazion behintzat.

Nonbait, hala ere, bere buruak kale egiten zion noski. Izan ere, bera ez zen berez Euskal Herrian sortua. Oso-oso txikitan, xomorro-arrautza besterik ez zela, kanpotik etorria izango zen Labezomorroff, inondik inora ere. Hori seguru. Horrela aipatzen zion, behintzat, etxeko amonak, piano azpitik egongelako alfonbraraino gaileta-papur bila pauso bat ematera ausartzen zen bakoitzean:

- Kaben la Rusia! Labezomorro alaena!

Ez zen zalantza handirik beraz. Labezomorroff, errusiarra zen. Urrutikoa. Aliena izateraino ez beharbada, baina kanpokoa bai. Bai, horixe! Amonak ez zuen ia piperrik ikusten, baina gezurrik ere ez zuen sekula esaten.

Horrexegatik, beharbada, gezurrik esaten ez zekielako alegia, oso denbora tarte laburrean amonak Afrikako lurralde epelagoetara alde egin zuen (Ceutara, zerura edo antzeko herri batera) eta banketxeek, bitartean, beren gain hartu behar izan zuten haren etxea zaintzeko zeregin arduratsua.

Handik gutxira, hau da, ia berehala, banketxeek etxea garbitu zuten eta pianoak eta, horren barruko hari eta tekla artean ezkutatuta, Labezomorroffek hiriko parkearen bazter eroso batean amaitu zuten, zakarrontzi-ilara luzearen aldamenean.

Hori guztia, zer esanik ez, kolpe gogorra izan zen Labezomorroffentzat. Amonarekin beti harreman iskanbilatsua izan zuen arren (batez ere erratza hartzea bururatzen zitzaionean), hari esker ikasi zuen euskaraz hitz egiten eta baita munduan gehien gustatzen zitzaiona ere: musika jotzea.

Izan ere, berak bakarrik zekien zenbat eta zenbat ordu pasa zituen piano azpian “Inaxio gure patroi haundia”, “Andre txarraren bentajak”, “Aita-semeak tabernan daude” eta antzeko abestiak entzuten. Entzuten eta buruz ikasten. Ze amonak ahots txarra zuen, baina oso altu kantatzen zuen behintzat.

Txikitatik amonak sartu zion grina hori medio, Labezomorroffek gau osoak pasa izan zituen tekla zuri-beltzen artean korrika, bere musika-dohainak garatzen eta trebatzen. Ordurako, harrokeriarik gabe esan zezakeen, soinean berezkoa zuen fraka jantzita, piano aurrean jartzen zenean, negarrez jartzeko gai zela edozein.

Horretarako gogoa zuen, bada, Labezomorroffek berak, une hartan. Hura zen hura atarramentua! Etxerik eta lagunik gabe, parke-bazterrean! Poliki-poliki, tekla artean irristaka, blues triste bat jotzen eta kantatzen hasi zen Labezomorroff: “Labezomorro, labezomorro, ezin dela ibili; faltan duela, ez duelako, mintzatzeko lagunik!”.

Horretan ari zen, jo eta jo, ahots lodiz hitzei zukua ateratzen, hots metaliko batzuk entzun zituenean atzealdetik. Gizon bat zen, azalez apur bat beltzarana, lata erraldoi bat makilaz astintzen ari zena. Labezomorroffek ez zuen izutzeko ere astirik izan.

- Segi, segi —zuzendu zitzaion gizona, ordea—. Erritmoa jarraitzen ari nintzen. Ederki ari zara. Pena bakarra, ezin dudala zurekin abestu, ez dakit-eta euskaraz oso ondo.

Labezomorroffek harrituta begiratu zion. Handia zen hura, gero! Berak musika behar zuen, mintzakide; beste hark, berriz, erritmoaren esanahia, hitza. Elkarri eman ziezaioketen behar zutena. Erraza zen hura.

- Hurbildu ba, motel. Neuk irakatsiko diat.

Jotzen jarraitu zuten. Eta kantatzen. Bi ahotsetara. Poliki eta dardarka, hasieran; segurtasun handiagoz, gero. Harik eta, bi tresna izatetik, hiru eta lau izatera pasa ziren arte.

# IPUINA

Emakume bat batu zitzaien gitarra txiki bat eta guzti (mandarina edo mandolina, edo horrelako fruta-izena zuen). Ile urdindua baina atzamarretan amona zenak baino artritis gutxiago zuena. Bilobei gustatuko omen zitzaien abesti hura eta berari ere irakasteko, mesedez.

Gorbata eta txaketa janzten zituen gizon gazte bat ere hurreratu zitzaien. Ez al zen banketxeko morroi hura, gainera? Labezomorroffek ez zekien seguru, denek horrenbesteko antza ote zuten... Bada hura, tronpa deitzen zion musika-tresna bitxi bat zuela etorri zen. Ba omen zekien euskaraz zer edo zer, baina herdoildu samarra omen zeukan.

Haiekin aritu zen Labezomorroff kantari eta pianoa jotzen ia gau osoan. Elkarrekin, alegia. Eta berdin, hurrengo egunetan ere. Egunetik egunera, gero eta jende-multzo handiagoa biltzen zen, gainera. Hura bai ederra, parkeko giroa!

Gaur egun, Labezomorroff jiran dabil. AEK-ko lagunek kontratatu dute, KORRIKA jaiaren kontura, korrikalarien jarraipena egiten duen furgoneta barruan musika jotzen aritzeko. Taldea eta guzti du gainera: “Babel-mozorro eta euskalariak”

# IPUINA. JARDUERA ZUZENKETA

| 1. | 2. | 3. | 4. | 5. | 6. | 7. |
|---|---|---|---|---|---|---|
| B | G | E | C | A | F | D |

# IBILBIDEA

## SARRERA

Jarduera honen helburua KORRIKA 18ren jarraipena egitea da. Horretarako, AEK koordinakundeak ***www.korrika.org*** webgunean erakusgai duen GPS bilatzailea erabiliko da. KORRIKA egunez egun zein bazterretan dagoen jakiteaz gain, Euskal Herriko txoko eta bazterrak gehiago ezagutzeko aukera izango dugu.

## PROZEDURA

- Euskal Herriko mapa gela barruan edo ikastolako pasabideetan jarriko da eta bertan KORRIKA 18ren ibilbidea markatuko dugu: KORRIKA non hasi, non amaitu eta egun bakoitzeko etapen hasiera- eta amaiera-puntuak.

- Egun bakoitzean, hasiera-puntutik bukaerarainoko ibilbidea markatuko da.

- Egun guztietan antzeko orduan webgunean begiratu eta momentu horretan KORRIKA non dagoen markatuko da mapan, horretarako KORRIKA 18ren irudian agertzen den furgoneta erabil daiteke.

- Aukera ikusiko balitz, prentsan topatutako argazkiak mapan kokatu eta lekuen deskribapenak osatuko ditugu.

## BALIABIDEAK

- Euskal Herriko mapa

- KORRIKAren ibilbidea

- KORRIKAren furgonetaren irudia

- ***www.korrika.org*** webgunea

# “ZER DAKIT?” GALDETEGIA

## SARRERA

Jarduera hau KORRIKA eta, oro har, euskara eta euskal kultura lantzeko da. Lehiaketa bat egingo dute ikasleek, ikasgela barruan hainbat taldetan banatuta zein ikasgelen artean. Moderatzaile batek (irakasleak) agindiko dituen galderak zein probak jarriko ditu.

## PROZEDURA

- Lehenik eta behin taldeak egin (ikasgela bereko ikasleak badira, talde txikiak sortu; ikasgela artekoa bada, zenbat talde sortuko diren erabaki).

- Irakasleak galderak fotokopiatu eta moztu egingo ditu eta galdera bakoitza paper zati batean jarri. Galdera guztiak kutxa batean sartuko dira.

- Ikasle talde bakoitzak dagokion txandan galdera bana hartuko du (taldeko bozeramaileak) eta ozenki irakurri. Irakasleak erabakiko du zenbat denbora duen taldeak galderaren erantzuna pentsatzeko.

- Galdera zuzenak egin ahala, puntuak lortuz joango dira ikasle taldeak.

- Irabazle suertatzen den taldeari sariren bat ematea posible litzateke (KORRIKA egunean lekukoa eramatea, adibidez).

## BALIABIDEAK

-Moderatzaileak aginduko dituen galdera zein probak (erantsita)

* **Oharra:** *Badira hausnarketarako bereziki; egokiak diren galderak, irakasleak erabakiko du beste galderekin nahastu edo jarduerari hasiera emateko erabiliko dituen.*

# “ZER DAKIT?” GALDETEGIA

- Zein taldetako abeslaria da Eñaut Elorrieta?
- Nork irabazi zuen azkeneko Euskal Herriko Bertsolari Txapelketa?
- Zenbat urte ditu Uxue Alberdik?
    - A) 20 baino gutxiago
    - B) 25-35 artean
    - C) 40 baino gehiago
- Zein taldek egin du KORRIKA 18ren kantua?
- Non ospatuko da 2013ko Nafarroa Oinez?
- Zein da Bizkaiko ikastolen jaiaren izena?
- Nor da Berria egunkariaren zuzendaria?
- Zein da Euskal Herriko mendirik altuena?
- Non hasiko da KORRIKA 18?
- Noiz ospatzen da Euskararen Eguna?
- Zein da Gatibu taldearen azken lanaren izenburua?
- Zer izen du  Durangoko kafe-antzokiak?
- Noiz ospatzen da Durangoko Azoka?
- Nork irabazi du Iparraldeko Bertsolari Txapelketako azken finala?
- Noiz ospatu zen lehenengo KORRIKA?
- Nor omenduko du KORRIKAk aurten?
- Zein herrialdetan amaituko da KORRIKA 18?
- Zenbat kidek osatzen dute Ze Esatek! taldea?
- Zer izen du GOSE taldeko kantariak?
- Nork aurkezten du Mihiluze?
- Zein da Gasteizko jaietako pertsonaia?
- Nork antolatzen du Durangoko Azoka?
- Jarraitu kantua...
    - Euskal Herrian euskaraz...
- Non ospatzen da Euskal Herriko Dantza Sueltoko Txapelketa?

# “ZER DAKIT?” GALDETEGIA

- Nork idatzi zuen *“Behi euskaldun baten memoriak”* liburua?
    - A) Kirmen Uribe
    - B) Bernardo Atxaga
    - C) Iban Zaldua
- Zein izan zen euskarazko lehen egunkaria?
    - A) Euskara
    - B) Euskaldunon Egunkaria
    - C) Eguna
- Zein da Gernikako pilotalekuaren izena?
- Noiz ospatzen da Bilboko Aste Nagusia ?
- Hauetatik zein EZ da Iruñeko auzoa?
    - Txantrea
    - Ermitagaña
    - Intxaurrondo
    - Sanduzelai
- Nork margotu zuen *“Gernika”* koadroa?
- Nongoa da Kirmen Uribe idazlea?
- Noiz zabaldu zituen ateak Guggenheim Museoak?
- Noiz ospatzen da Donostiako danborrada?
- Non jaio zen Balenciaga moda-diseinatzailea?
- Non ospatzen da Iparraldeko ikastolen jaia?
- Nor izan zen Eusko Jaurlaritzako lehen lehendakaria?
- Nork antolatzen du KORRIKA?
- Zein da Euskal Herriko hiribururik txikiena?
- Nork irabazi zuen 2012ko Euskal Herriko Itzulia?
- Zer izen du  Xabier Amurizaren alaba bertsolariak?
    - Miren
    - Leire
    - Gentzane
- Nor da Euskal Herrian Michelin izar gehien dituen sukaldaria?

# “ZER DAKIT?” GALDETEGIA

- Zein urtetan sortu zen Euskaltzaindia?
- Nor da Euskal Herriko Bertsozale Elkarteko lehendakaria?
    - Igor Elortza
    - Maialen Lujanbio
    - Iñaki Murua
- Hauetako zein da “labaindu” hitzaren sinonimoa?
    - laprast egin
    - birrindu
    - gerturatu
- Nongoak dira Betagarri taldeko kideak?
- Zenbat hizkuntza daude munduan? *
- Zenbat hizkuntza daude Europan? *
- Nola neur daiteke hizkuntza baten garrantzia? *
- Zenbat pertsonak (gutxi gorabehera) hitz egiten dute gaztelaniaz munduan? *
- Zenbat pertsonak (gutxi gorabehera) hitz egiten dute euskaraz munduan? *
- Zenbat hizkuntza hitz egiten dira Euskal Herrian? *
- KORRIKAren antzeko zein lasterketa ospatzen dute Katalunian?
- Erdi Aroan, Euskal Herriaz gain, non gehiago hitz egiten zen euskaraz?
- Zenbat euskaltegi eta gau-eskola daude Euskal Herrian?
    - 300 inguru
    - 100 baino gutxiago
    - 100 baino gehiago
- Zer izen du AEK-k hilabetero kaleratzen duen aldizkariak?
    - Gaztezulo
    - Argia
    - Aizu!
- Zenbat euskaltegi ditu AEK-k Bizkaian?

# GALDETEGIA ERANTZUNEKIN

- Zein taldetako abeslaria da Eñaut Elorrieta? (Ken7)
- Nork irabazi zuen azkeneko Euskal Herriko Bertsolari Txapelketa? (Maialen Lujanbio)
- Zenbat urte ditu Uxue Alberdik? (25-35 artean)
- Zein taldek egin du KORRIKA 18ren kantua? (Esne Beltza)
- Non ospatuko da 2013ko Nafarroa Oinez? (Tutera)
- Zein da Bizkaiko Ikastolen jaiaren izena? (Ibilaldia)
- Nor da Berria egunkariaren zuzendaria? (Martxelo Otamendi)
- Zein da Euskal Herriko mendirik altuena? (Hiru Erregeen Mahaia)
- Non hasiko da KORRIKA 18? (Andoain)
- Noiz ospatzen da Euskararen Eguna? (Abenduak 3)
- Zein da Gatibu taldearen azken lanaren izenburua? (Zazpi kantoietan)
- Zein da Durangoko Kafe Antzokiaren izena? (Plateruena)
- Noiz ospatzen da Durangoko Azoka? (Abenduko zubian?
- Nork irabazi du Iparraldeko Bertsolari Txapelketako azken finala? (Amets Arzallus)
- Noiz ospatu zen lehenengo KORRIKA? (1980)
- Nor omenduko du KORRIKAk aurten? (Euskaldun berriak, euskara ikasten ari direnak)
- Zein herrialdetan amaituko da KORRIKA 18? (Lapurdi)
- Zenbat kidek osatzen dute Ze Esatek! Taldea? (10)
- Zein da GOSE taldeko kantariaren izena? (Ines Osinaga)
- Nork aurkezten du Mihiluze? (Kike Amonarriz eta Ilaski Serrano)
- Zein da Gasteizko jaietako pertsonaia? (Zeledon)
- Nork antolatzen du Durangoko Azoka? (Gerediaga Elkarteak)
- Jarraitu kantua...
    - Euskal Herrian Euskaraz...
- Non ospatzen da Euskal Herriko Dantza Sueltoko Txapelketa? (Segura)
- Nork idatzi zuen “Behi euskaldun baten memoriak” liburua? (Bernardo Atxaga)
- Zein izan zen euskarazko lehen egunkaria? (Eguna)
- Zein da Gernikako pilotalekuaren izena? (Jai alai)

# GALDETEGIA ERANTZUNEKIN

- Noiz ospatzen da Bilboko Aste Nagusia ? (Abuztuan)
- Hauetatik zein EZ da Iruñeko auzoa? (Intxaurrondo)
- Nork margotu zuen “Gernika” koadroa? (Picasso)
- Nongoa da Kirmen Uribe idazlea? (Ondarru)
- Noiz zabaldu zituen ateak Guggenheim Museoak? (1997)
- Noiz ospatzen da Donostiako danborrada? (Urtarrilak 20)
- Non jaio zen Balenciaga moda-diseinatzailea? (Zumaia)
- Non ospatzen da Iparraldeko Ikastolen Jaia? (Senpere)
- Nor izan zen Eusko Jaurlaritzako lehen lehendakaria? (J.A. Aguirre)
- Nork antolatzen du KORRIKA? (AEK erakundeak)
- Zein da Euskal Herriko hiribururik txikiena? (Donibane Garazi)
- Nork irabazi zuen 2012ko Euskal Herriko Itzulia? (Samuel Sanchez)
- Nor da Euskal Herrian Michelin izar gehien dituen sukaldaria? (Eneko Atxa)
- Zein da Xabier Amurizaren alaba bertsolariaren izena? (Miren)
- Zein urtetan sortu zen Euskaltzaindia? (1918)
- Nor da Euskal Herriko Bertsozale Elkartekaren lehendakaria? (Iñaki Murua)
- Hauetako zein da “labaindu” hitzaren sinonimoa? (laprast egin)
- Nongoak dira Betagarri taldeko kideak? (Gasteiz)
- Zenbat hizkuntza daude munduan? (6.500 hizkuntza inguru)*
- Zenbat hizkuntza daude Europan? (Europan 50-60 hizkuntza inguru daude) *
- Nola neur daiteke hizkuntza baten garrantzia? (Hizkuntza baten garrantzia hiztun-kopuruagatik eta botere politiko eta ekonomikoagatik neur daiteke.)*
- Zenbat pertsonak (gutxi gora behera) hitz egiten dute gaztelaniaz munduan? (43 milioi)*
- Zenbat pertsonak (gutxi gora behera) hitz egiten dute euskaraz munduan? (800.000 inguru)*
- Zenbat hizkuntza hitz egiten dira Euskal Herrian? (3: euskara, gaztelania, frantsesa)*
- KORRIKAren antzeko zein lasterketa ospatzen dute Katalunian? (Correllengua)

# GALDETEGIA ERANTZUNEKIN

- Erdi Aroan, Euskal Herriaz gain, non gehiago hitz egiten zen euskaraz? (Erdi Aroan behintzat Errioxan eta Burgosko ipar-ekialdean ere hitz egin zela dokumentatuta dago)

- Zenbat euskaltegi eta gau-eskola daude Euskal Herrian? (100 baino gehiago)

- Zein da AEK-k hilabetero kaleratzen duen aldizkariaren izena? (Aizu!)

- Zenbat euskaltegi ditu AEK-k Bizkaian? (36)

# MEZUAREN HAUSNARKETA

## SARRERA

Jarduera honen helburua KORRIKA 18ren mezuaren inguruan hausnartzea da. Ipuinean irakurri dute hainbat pertsonaiak nondik jaso duten euskara eta nola zabaldu duten. Ikasleek eztabaida edo mahai inguru bat egingo dute, KORRIKA 18ren mezua oinarri hartuta: euskara norengandik jaso duten eta horrek ekarri dizkien onurak, beraiek euskara nori ematen dioten, edota nori eman nahi dioten, euskaraz hitz egiteak zer suposatzen dien, beraien eremuetan euskaraz komunikatzeko aukera duten...

Irakaslea izango da gaia planteatu eta batzuen eta besteen parte hartzea bilatuko duena. Ikasleen arteko errespetua ezinbestekoa izango da jarduera honetan: bakoitzak benetan pentsatzen duena adierazteko askatasuna izan dezala.

## PROZEDURA

Lehenik eta behin mezua landuko dute ikasleek: ***"Eman euskara elkarri"*** entzutean, zer datorkien burura, euskaraz bizitzeak zer suposatzen dien, euskararen egoera zein den Euskal Herriko lurralde batzuetan eta besteetan ...

Ipuina irakurtzea interesgarria izango da, Labezomorroff pertsonaiak euskara nondik jaso duen, nori eman dion ... eta norberak bere egoerarekin konparatzeko tartea hartzea.

***"Estres linguistikoa"*** izenburupean Interneten ikusgai dagoen honako bideo txikiak abiapuntua ematen du hausnarketarako:

http://www.youtube.com/watch?v=lGfydvpa3Vk&feature=player_embedded

Ahozko adierazpena izango da jardueraren gakoa, baina ikasleek idatziz 4-5 ideia hartzea ere interesgarri izango da.

## BALIABIDEAK

- Mezua.

- Ipuina (ikus jatorrizko ipuina).

- Koadernoa eta boligrafoak.

# MEZUA

KORRIKA 18k Eman euskara elkarri dio, euskal herritarrok elkarrekin bizitzeko hizkuntza izan behar duelako euskarak. Elkarri hitz egiteko hizkuntza.

Elkar entzuteko eta ulertzeko.

Dakienak ikasi nahi duenari irakatsi, ulertzen duenak hitz egiten duenari erabiltzeko aukera eman, agintariek herritar orori ikasteko bideak erraztu... Denok dugu zeresana eta zeregina.

Euskara denona da eta denontzat izan behar du. Kohesiorako lehengaia eta tresna.

AEK-ko kideok hizkuntza eta kultura bizien arteko bizikidetza aldarrikatzen dugu, eta munduarentzat defendatzen dugun kultura-aniztasunak bertako aberastasunaren errespetuan eta sustapenean oinarritu behar duela deritzogu. Horregatik dugu helburu euskararen ikaskuntzan eta erabileran oinarritutako elkarbizitza.

Euskara UNESCOren hizkuntza gutxituen atlasean dago. Hizkuntza bizia da, baina ahula da bere egoera, eta oso kezkagarria lurralde batzuetan. Horregatik, aginte publikoei dei egiten diegu, euskara babesteko eta bultzatzeko neurriak ezar ditzaten.

Baita norbanako eta erakunde guztiei ere euskara ikasi eta erabili dezaten, eta euskararen aldeko testuinguru soziopolitikoa sor dezaten.






EUSKARAZ BIZI

ikastolenelkartea

aek 18.korrika

EMAN EUSKARA ELKARRI

# EUSKARAREN DEKALOGOA

## SARRERA

Euskararen Dekalogoan ikasle bakoitzak euskararekiko bere konpromisoak idatziko ditu.

Euskararekiko errespetua landuko da jarduera honetan: ikasleek euskaraz bizitzeko emango dituzten pausoak azal ditzatela.

Ikasmaila honetan irakasleak ikasleen arteko eztabaida piztuko du, ikasle bakoitzaren hausnarketatik abiatuta (3.jarduera), pentsa dezatela zer egin dezaketen, zein izan daitekeen beren ekarpena...

Irakasleak ikasleek ikaskideen ideiekiko agertzen duten jarrera ikusteko aukera izango du jarduera honetan.

Ahozko zein idatzizko adierazpena lantzeko baliagarri izango da jarduera hau.

## PROZEDURA

- Ikasle bakoitzak bere konpromisoak idatziko ditu (horretarako, kontuan izan beharko du esaldi zuzen eta laburrak erabili behar dituela eta era positiboan idatziko dituela, gehienez 10).

- Talde txikietan elkartu eta konpromiso horiek bateratuko dituzte.

- Talde bakoitzeko bozeramaileak ahots ozenez irakurri eta guztion artean gelako dekalogoa sortuko dute.

## BALIABIDEAK

- Formatu handiko orri bat

- Arkatza edo boligrafoa

# “EMAN EUSKARA ELKARRI” LIPDUBa

## SARRERA

Jarduera honetan dantzan ipiniko ditugu ikasleak.KORRIKA 18ren abestia entzun eta abestiak adierazten dienarekin lipdub bat prestatuko dute ikasleek.

Esne Beltza taldeak KORRIKArako espresuki prestatutako abestia baliatuz, gidoia sortu eta grabatzeko moduko lipdub-a sortuko dute.

Interesgarria litzateke prestatutako lipdub-a grabatu eta ikastolako blog-ean eskegitzea edota KORRIKA TXIKIA ospatzen den egunean ikastolan proiektatzea.

## PROZEDURA

- Lehenik, lipdub-a mailaka edo zikloka prestatuko duten erabakiko dute ikasle-irakasleek.

- KORRIKA 18rako Esne Beltzak egindako kantua eta bideoklipa ikusiko dituzte,ideiak hartu eta gidoiaren aurre-prestaketa egiteko.

- Gidoi egokia sortzea ezinbestekoa izango da, grabaketa egitera doazenean, bakoitzak noiz eta non azaltzen den jakiteko, grabaketa egin bitartean etenik egin behar ez izateko…

- Eszenatokia aukeratu beharko da, jantziak bilatu, karakterizazio berezirik aurreikusten bada, horiek antolatu, grabaketa egiteaz arduratuko den pertsona hautatu … azken saioan lipdub-a grabatu ahal izateko.

- Irakasleak egoki ikusten badu, grabaketa egin eta ikastolako blogean eskegi daiteke.

- Polita izan daitekegrabaketa, KORRIKA TXIKIA ospatzen den egunean,ikastolako haur eta familiei erakustea.

## BALIABIDEAK

- Abestia: musika, letra eta bideoklipa.

- Grabatzeko kamera.

# LEKUKOA

## SARRERA

Jarduera hau edizio bakoitzean errepikatzen den horietakoa da. Klasikoa bihurtu arren, komeni da norberak berrikuntza bilatzeko saiakera egitea. Gogoratu, gela bakoitzak euskararen dekalogoa osatu eta onartu duela aurretiaz eta hori izango dela gelako lekukoaren barruan gordeko den mezu ezkutua.

LH2. mailatik gorako ikasleen kasuan, ikasgela bakoitzeko ordezkariak ikasgela guztietan lortutako mezu eta konpromisoak baliatuz dekalogo orokor bat sortzeko elkartu baldin badira, lekukoaren barruan gelako dekalogoa zein ikastetxeko dekalogoa gorde daitezke.

## PROZEDURA

- Ikasleei komuneko edo sukaldeko paperaren tutuak ekar ditzaten eskatuko diegu jarduera hau egin aurretik.
- KORRIKAren irudiez baliatuz tutua apaindu. (Hurrengo orrialdean eskaintzen ditugu baliagarri izan daitezkeen irudiak).
- Azkenik, pinotxo-papera baliatuz, koloretako zintak egin eta goiko muturrean itsatsi.
- Adostutako gelako/ikastetxeko dekalogoa kartoi mehean idatzi eta lekuko barruan sartu, eta ertzak estali, mezua eror ez dadin.

## BALIABIDEAK

Jarduera hau burutzeko baliatuko ditugunak:

- Komuneko edo sukaldeko paperaren barrualdeko tutuak.
- Kartoi mehea
- Lekeda
- Margoak
- Koloretako zintak (pinotxo-papera, lazoak, hariak...)

# PETOA

## SARRERA

Jarduera hau edizio bakoitzean errepikatzen den horietakoa da. Papera da jarduera hau burutzeko baliabide nagusia. Plastikoa, ahal dela, baztertu egingo dugu, ingurunea kutsatzen duela kontuan harturik; hala ere, aurreko edizioetarako erabilitakoak birziklatzea proposatuko dizuegu. Aukera bikaina da ingurugiro eta birziklapenari buruz hitz egiteko eta A21eko konpromisoak gogora ekartzeko.

## PROZEDURA

Lehenik, KORRIKA 18ko irudia banatuko diegu, (ondorengo orrian) koloreztatzeko. Aurreko aldean aurtengo leloa egongo da; atzeko aldean ikasle bakoitzak bere konpromisoa idatziko du. Petoa KORRIKAren kolorez margotu eta ertzetatik moztuko dugu. Atzeko eta aurreko aldeak kamisetari lotuko dizkiogu kate-orratzen laguntzaz edota soka edo lazoak erabiliz eta ertzak lotuz.

## BALIABIDEAK

Jarduera hau burutzeko baliatuko ditugunak:

- Aurreko urteetako petoak (izatekotan).
- Petoaren fotokopia Din A-4 tamainara handituta (ikus hurrengo orrialdea)
- Margoak
- Artaziak
- Kate-orratzak
- Soka, lazoa edo antzekoa.





# KORRIKA TXIKIA

## SARRERA

KORRIKA TXIKIA herritik KORRIKA 18 pasatzen den egunean burutzea litzateke egokiena. KORRIKA herritik pasatuko ez balitz, lurraldea hartuko da erreferentziatzat.

Jarduera hau, lagunartean eta giro alaian egitekoa da, hortaz, ikasleen arteko kidetzea bultzatzea ezinbestekoa da.

KORRIKA 18 eskola orduetan pasatzen bada herritik, DBH eta DBHOko ikasleak KORRIKAn parte hartzera joatea litzateke egokiena.

KORRIKA eskola-ordutegian pasatzen bada gure herritik, nahiz eta ikasle txikiekin KORRIKA 18an parte ez hartu, ikustera joan eta haientzat KORRIKA TXIKIA prestatu.

- LH2 tik gora, KORRIKA eskola-ordutegian pasatzen bada gure herritik, KORRIKAn hartuko dugu parte.

## PROZEDURA

KORRIKA TXIKIA jai-giroan ospatuko den ekitaldia da, horretarako, ikasle nagusiak irakasleekin batera KORRIKA TXIKIA antolatzeko lanetan arituko dira.

Ikasleak taldeetan antolatuko dira eta talde bakoitzak egiteko bat izango du: batzuek haur txikiak lagunduko dituzte, beste batzuek KORRIKA TXIKIA ospatzen den egunean egiteko jolasak antolatuko dituzte, beste batzuk pankarten arduradunak izango dira (KORRIKA TXIKIA hasiko den lekura eraman, jaso...)...

Herri eta zonalde bakoitzean euskaltegiek eman ohi dituzten jarraibideen arabera antolatuko da KORRIKA TXIKIA.




## BALIABIDEAK

- Megafonian KORRIKA 18ko kanta, aurreko urteetako KORRIKA kantak.

**Oharra:** *KORRIKA 18 eskola-ordutegitik kanpo pasako balitz, animatu ikastetxeko familia eta ikasleak KORRIKA ofizialean parte hartzera.*



# IBILBIDEA

**MARTXOAK 14, OSTEGUNA**

ANDOAIN ....................16:30:00
ADUNA.........................17:09:30
VILLABONA ..................17:33:30
IRURA...........................17:46:00
ANOETA .......................17:59:00
TOLOSA ........................18:11:00
IBARRA..........................18:43:30
ALEGIA..........................19:07:30
IKAZTEGIETA..................19:52:30
LEGORRETA ..................20:12:00
ITSASONDO..................20:37:39
ORDIZIA ........................20:44:09
ZALDIBIA .......................21:09:30
LAZKAO ........................21:34:33
OLABERRIA ....................22:07:03
IDIAZABAL.....................22:25:30
OLABERRIA ....................22:38:30
BEASAIN .......................22:51:30
ORMAIZTEGI .................23:49:30

**MARTXOAK 15, OSTIRALA**

MUTILOA.......................00:07:54
ZERAIN .........................00:25:54
SEGURA ........................00:38:30
ZEGAMA.......................01:16:18
ALTSASU........................03:11:30
OLATZAGUTIA ...............03:40:00
ALTSASU........................03:56:30
URDIAIN........................04:08:30
ITURMENDI....................04:20:30
BAKAIKU .......................04:26:30
ETXARRI ARANATZ .........04:44:30
ARBIZU..........................05:20:30
LAKUNTZA ...................05:32:30
ARRUAZU .....................05:44:30
UHARTE ARAKIL .............05:56:30
IRAÑETA........................06:14:30
HIRIBERRI ......................06:38:30
IRURTZUN.....................07:20:30
LEKUNBERRI...................08:46:00
ULTZAMA .....................11:06:45
BERRIOBEITI ...................13:00:45
BERRIOZAR ...................13:23:30
IRUÑEA .........................13:40:21
ANTSOAIN...................13:48:09
IRUÑEA .........................13:55:57
BURLATA........................14:09:36
ATARRABIA ...................14:22:36
IRUÑEA .........................14:36:54
ZIZUR ............................16:39:36
ZIZUR NAGUSIA ............16:44:24
IRUÑEA .........................17:08:48
ORKOIEN .......................18:16:30
ETXAURI ........................19:18:15
MURUGARREN...............22:16:00
LIZARRA.........................22:40:00
VILLATUERTA..................23:31:00

**MARTXOAK 16, LARUNBATA**

ZIRAUKI .........................00:42:39
MAÑERU .......................00:58:15
GARES ..........................01:21:39
OBANOS .......................01:40:51
ENERITZ ........................02:16:51
BIURRUN-OLKOTZ ..........02:51:39
TEBAS ..........................03:19:51
URROTZ.........................05:19:51
AGOITZ.........................06:01:51
AURITZ ..........................09:07:51
ORREAGA .....................09:19:51
LUZAIDE ........................11:08:21
ARNEGI..........................11:27:51
DONIBANE GARAZI.......12:17:51
MAULE ..........................17:02:21
DONAPALEU.................19:40:51
HAZPARNE ....................22:55:21

**MARTXOAK 17, IGANDEA**

ITSASU ..........................00:17:21
KANBO ..........................00:43:21
UZTARITZE ....................01:50:21
EZPELETA .......................02:50:21
AINHOA ........................03:26:21

# IBILBIDEA

SARA ............................04:20:21
BERA ............................04:50:21
LESAKA .........................05:49:09
ETXALAR........................06:00:33
IGANTZI........................06:12:33
SUNBILLA .....................06:35:57
DONEZTEBE ..................07:26:57
LEGASA.........................07:44:57
ORONOZ.......................08:02:57
ARRAIOZ ......................08:25:45
ELIZONDO ....................08:54:33
ESTERIBAR .....................11:06:33
ZILBETI...........................13:38:42
AURIZBERRI....................15:14:12
GARRALDA ....................15:58:12
ARIBE ............................16:24:12
GARAIOA.......................16:37:12
ABAURREPEA .................17:03:12
ABAURREGAINA ............17:29:12
JAURRIETA .....................18:19:12
EZKAROZE ....................18:49:12
OTSAGABIA ..................19:07:12
ITZALTZU .......................19:25:12
UZTARROZE...................21:01:12
IZABA ...........................21:25:12
URZAINKI ......................21:49:12
ERRONKARI ...................22:07:12
BURGI ...........................23:07:12

**MARTXOAK 18, ASTELEHENA**

NABASKOZE .................00:37:12
IRUNBERRI .....................02:42:36
LEDEA ...........................03:42:36
ZANGOZA ....................04:12:36
OIBAR ...........................05:36:36
ESLABA .........................06:06:36
LERGA...........................06:30:00
SAN MARTIN UNX .........07:22:48
TAFALLA.........................08:22:48
MIRANDA ARGA............10:07:54
FALTZES .........................12:08:24
CAPARROSO .................14:07:39
VALTIERRA......................16:04:06
ARGUEDAS....................16:35:36
TUTERA .........................18:03:36
CINTRUENIGO..............19:58:33
CASTEJON ....................21:26:33
CADREITA......................22:23:03
MILAGRO ......................23:14:03

**MARTXOAK 19, ASTEARTEA**

AZAGRA .......................00:35:33
SAN ADRIAN.................01:11:33
SARTAGUDA..................02:35:33
LODOSA .......................03:59:33
SESMA ..........................05:05:33
LOS ARCOS..................06:11:33
MUES ............................06:47:33
KANPEZU ......................08:40:15
MAEZTU ........................10:00:21
DULANTZI......................11:45:48
AGURAIN ......................13:30:24
ZALDUONDO ................14:26:24
ARAIA ..........................14:51:54
GASTEIZ ........................18:45:00

**MARTXOAK 20, ASTEAZKENA**

TREBIÑU ........................00:40:15
ARGANTZUN.................01:44:15
KOARTANGO ................03:41:03
URDUÑA ........................06:03:57
AMURRIO ......................07:04:03
ZIGOITIA .......................10:09:27
OTXANDIO....................11:58:57
ABADIÑO......................13:00:21
MAÑARIA......................13:34:48
IZURTZA ........................14:12:48
DURANGO ....................14:24:49
IURRETA.........................14:52:33
DURANGO ....................15:01:19
ABADIÑO......................15:11:24
ATXONDO.....................15:46:10
ELORRIO.........................16:02:25
BERRIZ............................16:53:25

# IBILBIDEA

| | |
|---|---|
| ZALDIBAR | 17:19:52 |
| MALLABIA | 17:43:16 |
| ERMUA | 18:05:46 |
| EIBAR | 18:30:25 |
| SORALUZE | 19:28:55 |
| ELGOIBAR | 20:27:25 |
| AZKOITIA | 21:46:40 |
| AZPEITIA | 22:10:04 |
| AZKOITIA | 22:39:07 |

**MARXOAK 21, OSTEGUNA**

| | |
|---|---|
| BERGARA | 00:41:52 |
| URRETXU | 01:47:49 |
| ZUMARRAGA | 02:07:01 |
| LEGAZPI | 02:50:46 |
| OÑATI | 04:22:49 |
| ARRASATE | 05:40:49 |
| ARETXABALETA | 06:06:49 |
| ESKORIATZA | 06:26:19 |
| LEINTZ GATZAGA | 07:17:49 |
| LEGUTIO | 08:18:16 |
| UBIDE | 09:07:16 |
| ZEANURI | 10:35:10 |
| AREATZA | 11:09:55 |
| ARTEAGA | 11:27:40 |
| ARANTZAZU | 11:59:31 |
| IGORRE | 12:07:19 |
| DIMA | 12:13:49 |
| IGORRE | 12:43:43 |
| LEMOA | 13:11:01 |
| ZORNOTZA | 13:47:58 |
| LARRABETZU | 14:42:52 |
| LEZAMA | 15:25:07 |
| ZAMUDIO | 15:48:31 |
| DERIO | 16:09:31 |
| LOIU | 16:36:31 |
| SONDIKA | 16:46:16 |
| ERANDIO | 17:13:34 |
| BILBO | 17:37:37 |
| ETXEBARRI | 21:57:37 |
| GALDAKAO | 22:17:07 |
| ZARATAMO | 23:02:37 |
| BASAURI | 23:15:37 |

**MARTXOAK 22, OSTIRALA**

| | |
|---|---|
| ARRIGORRIAGA | 00:33:37 |
| UGAO | 01:06:07 |
| ARRANKUDIAGA | 01:25:37 |
| ARAKALDO | 01:52:13 |
| LAUDIO | 02:06:13 |
| OKONDO | 03:16:13 |
| GORDEXOLA | 03:23:13 |
| GUEÑES | 03:33:43 |
| ZALLA | 03:47:43 |
| BALMASEDA | 04:36:43 |
| ZALLA | 04:56:13 |
| SOPUERTA | 05:41:43 |
| GALDAMES | 06:27:13 |
| MUSKIZ | 06:40:13 |
| ABANTO | 07:25:43 |
| ORTUELLA | 08:11:13 |
| TRAPAGARAN | 08:43:43 |
| PORTUGALETE | 09:22:43 |
| SANTURTZI | 09:33:13 |
| PORTUGALETE | 10:11:01 |
| SESTAO | 10:37:40 |
| BARAKALDO | 10:57:49 |
| ERANDIO | 12:15:49 |
| LEIOA | 13:01:19 |
| ERROMO | 13:33:49 |
| ALGORTA | 14:00:28 |
| BERANGO | 14:55:43 |
| SOPELA | 15:16:43 |
| BARRIKA | 15:54:31 |
| PLENTZIA | 16:18:19 |
| GORLIZ | 16:42:49 |
| URDULIZ | 17:15:19 |
| LAUKIZ | 17:34:49 |
| GATIKA | 18:07:19 |
| MUNGIA | 18:33:19 |
| BAKIO | 19:53:49 |
| BERMEO | 20:46:19 |
| MUNDAKA | 21:33:19 |
| SUKARRIETA | 21:59:19 |
| BUSTURIA | 22:05:49 |
| MURUETA | 22:25:19 |

# IBILBIDEA

FORUA..........................22:44:49
GERNIKA.......................22:57:49
KORTEZUBI....................23:43:19

**MARTXOAK 23, LARUNBATA**

IBARRANGELU ..............00:39:19
ELANTXOBE...................01:07:19
IBARRANGELU ..............01:21:19
EA................................01:35:19
ISPASTER .......................02:33:49
LEKEITIO........................03:06:19
GIZABURUAGA.............04:21:49
AULESTI.........................04:49:49
MUNITIBAR....................05:30:49
ZIORTZA-BOLIBAR ..........06:04:37
MARKINA-XEMEIN .........06:37:07
BERRIATUA.....................07:25:10
ONDARROA.................07:46:10
MUTRIKU .......................09:05:49
DEBA ............................09:18:49
ZESTOA ........................11:09:19
ZUMAIA ........................12:32:07
GETARIA........................13:31:37
ZARAUTZ.......................14:06:54
ORIO ............................15:01:30
USURBIL.........................16:32:51
LASARTE ........................17:09:15
HERNANI ......................18:35:33
ASTIGARRAGA .............19:20:18
DONOSTIA....................19:40:15
PASAI ANTXO................23:31:25
PASAI SAN PEDRO .........00:07:28
PASAI DONIBANE..........00:16:28

**MARTXOAK 24, IGANDEA**

LEZO............................00:31:31
ERRENTERIA..................00:45:52
OIARTZUN....................01:27:10
HONDARRIBIA ..............03:06:25
IRUN ............................03:45:25
HENDAIA .....................04:11:25
URRUÑA........................05:16:25
DONIBANE LOHIZUNE...05:57:55
AZKAINE .......................06:46:55
SENPERE .......................07:42:55
ARBONA.......................08:52:55
BIARRITZ........................09:48:55
ANGELU........................10:30:55
BAIONA........................11:12:55
BUKAERA ......................12.29.55

